Dakizuenez, Euskal Preso Politikoen Kolektiboak eztabaida sakona burutu zuen iazko udazkenetik. Ezker Abertzale osoaren estrategiarekin bat eginez, berari dagokion eremutik ekarpena egin du EPPK-ak: bere posizionamendu politikoa gaurkotuz, barne zein kanpo antolakuntza sendotuz, eta prozesu politikoa indartuz. Traba zein zaitasun guztien gainetik bururaino eramandako eztabaida honen ondorioak iragan ekainaren 2an, Gernikan, plazaratu zituen EPPK-ak.

Eztabaida horren berri ematearekin batera, hainbat eragile politiko, sindikal eta sozialekin harremanetan sartzeko asmoa ere iragarri zuen Kolektiboak. Izan ere, ezinbesteko eragile dugu Kolektiboa eta denon artean jorratzen ari garen prozesu demokratikoan bere eritzia kontutan hartzeko delakoan gaude. Tamalez, nonnahi eta nornahiren aldetik hizpide izaten den Kolektiboari bere ahotsa zuzenki plazaratzeko orduan oztopoak baino ez zaizkio jartzen eta ia inoiz ez zaio bere zeresan ezagutarazteko paradarik eskaintzen.

Horra hor gure lanaren zeregin eta zergatia: EPPK-ak prozesu politikoari egiten dion ekarpena ahalbidetzen duten zubiak eratzea.

Hartara, EPPK-aren Adierazpena ezagutarazi, azaldu eta konpartitzea izan dira eragile ezberdinekin burututako bilkuren lehendabiziko helburua, harreman ildo hau aurrerantzean egonkortu nahian. Ez ginen, beraz, bilkura puntual edota mugatuen bila ari; aitzitik, Kolektiboak beste eragileen proposamenak ezagutu nahi ditu eta haiekin bere gogoetak konpartitu.

Honelako eremua sortzea, ordea, ez da gauerdiko ahuntzaren eztula. Denon ezagun dira gai honi dagozkion garrantzi eta esannahi politikoa. Izan ere, euskal preso politikoak gatazkaren parte eta ondorio dira aldi berean, eta hor kokatzen da Gobernuek agertzen duten itxikeria, jakin baitakite esparru honetan emandako balizko urratsak prozesu beraren onerako izango zirela. Kolektiboari orain arte ezarri zaion salbuespen egoera bere horretan mantenduz gero, berriz, prozesu bera da oztopatu eta are gelditu nahi luketena.

Ekainean plazaraturiko Adierazpenaren bitartez, Kolektiboak urrats sendo eta garrantzitsuak eman zituen. Prozesuak honela eskatzen zion eta EPPK-ak, era ezin egokiagoaz erantzun izan ez ezik, prozesuak aurrera egiteko baldintzak sortzera lagunduko lituzkeen urrats gehiago emateko ere bere prestasuna agertu zuen.

Honen aurrean, Estatu frantses zein espainolaren erantzuna salbuespen egoerak irudikatzen dituen errepresioa eta krudelkeria areagotzea izan da. Sakabanaketa politika mantentzeko aitzakiarik ez dute ordea, ez legal ez eta politikorik ere, eta han-hemenka Kolektiboari mogi dadin eskale gisa dabilzkigun horiexek ditugu, hain zuzen ere, urrats txikienik eman ez duten bakarrak. Alta, prozesu benetan demokratikoa izango badugu, presoen gaiari irtenbide politiko bat eman behar diote. Hori egiten ez den bitartean, bistan da, prozesua bera egongo da geldirik.

Salbuespeneko egoera eta neurri oro indargabetu, sakabanaketarekin amaitu, euskal presoak Euskal Herriratu, marko legal antiterrorista indargabetu, auzi politikoekin amaitu, Estrasburgoko erabakiaren aurka bahitu gisa mantentzen dituzten presoak berehala askatu eta gaixo direnak etxeratzea Estatuei dagokie.
EPPK aldiz, eragile politikoen hausnarketak jaso eta bereak konpartitu nahiko lituzke, aurrera begira, hartu beharreko erabakiak modu eraginkorrean jorratu ahal izateko. EPPKk zeresan handia daukalako, presoen ildotik, gatazkaren konponbide integralari

begira.
Horrelaxe ulertu du Kolektiboak ere eta horretan datza, hain zuzen ere, gainerako eragileekin egon beharra eta honen asmotan burutu ditugun bilkurak.

Beraz, Kolektiboaren erreguz burutu ditugun bilkura horien berri ematera gatozkizue gaur.

**2.- BILKUREN BALANTZEA**

Hauek dira gure deiari erantzuna eman diotenak:

– Lokarri

– Alternatiba, Aralar, EAJ-PNV, Batzarre, Eusko Alkartasuna, Euskal Herria-Bildu, Ezker Batua, Geroa Bai, Izquierda Unida Navarra eta Partido Socialista de Euskadi alderdiak.

– Comisiones Obreras, CGT, EHNE, ELA, ESK, HIRU eta STE-EILAS.

– Ezker Anitzarekin hitzartuta daukagu bilera eta UGT koekin data zehaztekotan gaude.

– Iparraldeko zenbait eragilerekin ere hurrengo asteetan biltzeoak gara, halanola, AB, Batera, CDHPB, Batonnier, Garapen Kontseilua, EELV, ELB, Laborantza Ganbera, LDH, NPA, PNB, SAF, Gurutze Gorria,....

Eta alderdi politiko bakarrak, PP soilik, egin dio muzin gurekin biltzeari, gure eskaerari erantzun gabe gainera.

Gure ustez, burututako bilera hauekin, EPPKk daukan eragiletza politikoa praktikan gauzatzeaz gain, Euskal Herriko eragile politiko, sozial eta sindikalen aldetik, EPPKrekin harreman politiko iraunkor bat izateko prestutasuna sumatu dugu. Zentzu honetan, EPPK ko mintzakideekin bisita baimenaren eskaera kudeatzeko lanean gabiltza beraiekin, ahalik eta azkarren, hartu-eman horiek gure bitartekaritza lanik gabe eman daitezen.

Bilkuretan, arestian aipatutako harreman zuzenen garapena jorratzeko prestutasunaz gain, bat egin izan dute orokorrean, sakabanaketa politikarekin bukatzearen premiaz. EPPK-aren gogoetekin adostasunaz harago, eragile guztien hausnarketek, Estatuen aldetik salbuespen neurriak oraindik indarrean mantentzeak mendeku politika soilari erantzuten diola daukate oinarrian. Are gehiago, presoena desblokeatu beharreko esparrua da, ireki den egoera berri horrek aurrera egingo badu.

Bilkura hauetan, eragile askok, gai ezberdinen inguruko hausnarketa eta proposamenak luzatu dizkigute. Bide horretan pozik gaude, harreman dinamika honek, aurrera begira eskaintzen duen jarrera eraikitzaile eta positiboagatik, hau da, bi norabideko bilerak izan direla uste dugulako.

**3.- AURRERA BEGIRA**

Hartara, eta Euskal Preso Politikoen Kolektiboak gaur ezagutzera eman duen

agiriaren ildoari jarraiki, Espainiako zein Frantziako agintariei hauxe eskatzen diegu:

- Sakabanaketarekin amaitu eta preso guztiak Euskal Herriratzea. Pausu honek, gatazkaren ondorioen aferan, agertoki berri bat irekitzeaz gain kolektiboari, prozesu politikoan modu zuzenago eta eraginkorrago batean parte hartzeko aukerak eskeiniko dizkiolako.

- Doktrinapean bahiturik direnak eta gaixo larriak dituztenen kaleratzea.

Bide horretan, datorren urtarrilaren 12rako Herrira mugimenduak Bilbon burutzeko manifestazioarekin bat egiten dugu eta bertan parte hartzeko deialdia gure egiten dugu ere.

Bilbon elkartuko garela eta ondorengoa lanaz, espetxe politika hanker honekin amaituko dugun esperoan, agurtzen zaituztegu eta berriro eskertzen ere zuen presentziagatik.

**EPPK-ko Bitartekariak**

Euskal Herria, 2012ko abenduaren 29a